•

*Amak kontatzen zizkigun ipuinak gogoan,*
*berari omenaldia eginez,*
*Motxiladun umeei*
*eta espetxealdian idatzi didaten ume maitagarriei.*

*Eskerrik asko familia eta lagunei.*

**Joseba Erostegi**

•

*Mirentxin gidariei, senideei, Euskal Preso eta Iheslari guztiei, familiari, lagunei...*
*indarra, elkartasuna eta maitasuna adierazten diguzuen guztioi.*
*Bereziki aurten zeru eder honetan piztu den izar berriari.*
*Amamari.*

**Lorea Erostegi**



EGILEA:

**Joseba Erostegi Bidaguren 'Eltzikorta'**
1953.09.07
Antzuola

1997.01.07an atxilotu zuten. Alcala-Mecon izan ondoren, Herrera de la Mancha presondegira eraman zuten eta bertan daukate gaur egun.

IRUDIAK:

**Lorea Erostegi Fernandez**

**www.literaturakoadernoak.org**





ISBN: 978-84-942 777-5-7
LEGE GORDAILUA. DEPÓSITO LEGAL. DÉPOT LÉGAL: SS-1302-2018

# Hitzaurrea



Txori Mezularirik ezagutzen duzu?

Badakizu mezuak nola eta norentzat bidaltzen dituzten?



Esku artean duzun ipuina, hain zuzen, mezu elkartruke batetik jaio da. Espetxean dagoen osabaren eta kalean dagoen ilobaren arteko mezuek mimo handiz eraiki dute kontakizuna. Kasu honetan, espetxearen errealitatea, bere zerumuga urratzen duen burdin elorri arantzez josia, gainditu du txori mezularien hegaldi txikiak.

Izaera kolektiboa duen edozein keinu debekatua dagoen eremu batean, lau eskutara eraikitako ipuinak badu zentzu bat. Orriotan azaltzen den Okilak bezala, kolpe txiki etengabez, sortu da arrakala osaba inguratzen duen paretan, bertatik igorri dira afektuzko hitz eta kolore biziko sentimenduak.

Baina, non bizi dira Txori Mezulariak? Zer dio garraiatzen duten mezuak?

Galdera hauen erantzunak eta gauza gehiago aurkituko dituzu ipuin honetan.

Txori mezulariak ipuinaren zenbait informazio zu zeuk, irakurle, osatu beharko dituzu: lekuen eta protagonisten izenak. Horrela, liburua irakurtzerakoan, gogoan izango dituzu zuk nahi dituzun txoko eta pertsona horiek eta, agian, gertakari berriak asmatzeko gogoa ere bai!

Ataramiñe

**OHARRA**

*Hutsune batzuk topatuko dituzu testuan, kolore ezberdinekin. Kolore bakoitzean, zuk zeuk hautatu eta hutsunean bertan idatzi beharko dituzu zeure protagonista, haren laguna, herria eta gertu daukan mendiaren izenak.*

Herria

Protagonista

Mendia

Laguntxoa

**Istorio hau** Euskal Herriko zelai berdeetan gertatu zen. Eguzkiaren epeletan eta txoritxoek zuhaitzetan kantu polit bat txiokatzen zuten bitartean, haurtxo polit bat jaio zen ______ .

Haurtxoa hain zen ederra, bere gurasoak pozez zoratzen zeudela. Auzokoak ere, jaioberria ezagutu nahi zuten, eta bisitan gerturatzen ziren bere etxera.

- Ze haurtxo ederra! Ze izen dauka?

- Oraindik ez du izenik, baina izen polit bat pentsatzen ari gara.

Bisitari bakoitzak esaten zien eurak aukeratutako izena haurtxoarendako polita izango zela. Azkenean, gurasoek izen polit bat aukeratu zuten ______ .







poliki-poliki oinez ikasi zuen, baita hitz batzuk esaten ere. Konturatu orduko han ibiltzen zen alde batetik bestera korrika eta amatxori kontu pila esaten; bere irribarretxoarekin etxe guztia alaitzen zuen.

Behin gurasoek erabaki zuten eskolara eramateko ordua zela. Lehenengo egunean, eskolan beste ume batzuekin utzi zutenean, , apur bat beldurtu zen. Malko txiki batzuk bota zituen, baina berehala hasi zen jolasean beste umeekin. Gurasoak haurra etxera eramateko itzuli zirenean, irribarre batekin hartu zituen; eskolan ze jolas egin zuten kontatu eta kontatu ibili zen, .

Jaieguna zelako eskolara joan behar ez zen egun batez, ohetik jaiki eta norbaitek beretzat opari bat utzi zuela esan zioten gurasoek. Txukun-txukun bilduta zegoen fardeltxoa ireki zuenean, opari liluragarri bat aurkitu zuen.

– Zeinek ekarri dit oparia?

– Mari Domingik eta Olentzerok ume maitagarriei ekartzen diete oparia eta hau zuretzat utzi dute.

– Baina nik ez ditut ezagutzen!, erantzun zuen .

– Eurek ume guztiak ezagutzen dituzte, baita non bizi diren ere. Horrela, urtero umeek eskatzen dituzten opariak banatzen dituzte.

– Zelan eskatzen zaizkie nahi diren opariak?

– Zerrenda eskutitz baten idatzi ondoren, herriko plazan ipintzen duten postontzian uzten da eskutitza. Baina horretarako lehenengo idazten ikasi behar duzu, gero eurei eskaria egiteko.

– Non bizi dira?

– bizi dira, han txondorra egiten dute bertatik egur-ikatza atera eta gero kaleko etxeetan banatzeko.






Berriz eskolara itzuli zenean, irakasleari esan zion bizkor-bizkor idazten ikasi nahi zuela Mari Domingiri eta Olentzerori idazteko. Urtean zehar asko saiatu zen. Lehenengo hitz batzuk eta gero esaldiak idazten ikasi zuen.

Poz-pozik zegoen! Oraingoan berak idatziko zien eskutitza.

Opari zerrenda luze-luzea
idatzi, eta postontzira bota
zuen kartazalean
helbidea ipinita.

Urte hartan ere Mari Domingik
eta Olentzerok opariak banatu
zituzten.
iratzarri eta korrika joan zen
opariak hartzera. Fardeltxoa
ireki zuenean, opari polit bat
aurkitu zuen, bakarra, baina
ez berak nahi zituen guztiak.
Apur bat triste zegoen bakarra
utzi ziotelako.



Oporrak amaitu zirenean eskolara itzuli zen, eta laguntxo guztiak jasotako opariekin agertu ziren. arduratuta zegoen Mari Domingik eta Olentzerok, agian bere eskutitza jaso ez zutelakoan, eskatutako opari guztiak ekarri ez zizkiotenez.

Eskolatik irten zirenean, bere laguntxo bati kontatu zion buruan zerabilena eta laguntza eskatu zion mendira joateko. Mari Domingi eta Olentzerorekin hitz egin nahi zuen, ea bere eskutitza hartu zuten edo berak eskatu zituen opariak zergatik ez zizkioten ekarri galdetzeko.

Bi laguntxoak tipi-tapa han joan ziren aldapan gora eta baserri baten ondoan gelditu ziren atsedena hartzen. Baserriko amona gerturatu zitzaien eta esan zien:

– Zer egiten duzue etxetik hain urruti?

– goaz Mari Domingiri eta Olentzerori gauza batzuk galdetzera. Badakizu hor dauden?

– Ikusten duzue egur pila hartatik irteten den kea? Hura txondorra da, han egon izan dira, baina beste mendietan ere txondorrak dauzkatenez, ez dira beti hor egoten, esan zien amonak.

Mendian gora abiatu ziren eta txondorra kea zeriola zegoen lekura iristean... Mari Domingiren eta Olentzeroren arrastorik ez. Biak nekatuta zeudenez, belar gainean eseri ziren. Txondorraren inguruan zuhaitz handi bat zegoen, eta txoritxo batzuek zuhaitzetik mokoarekin egur zatiak hartu eta txondorrean ipintzen zituzten. Beste txori handiago bat, Okila, zuhaitzean bere mokoarekin joz, zuloa egiten zebilen, bere habia.

Mari Domingi eta Olentzero ez zirenez agertu, etxera itzultzea pentsatu zuten bi haurrek.









[redacted] etxera itzuli zenean, amari galdetu zion.

– Ama. Zergatik Mari Domingi eta Olentzerok ez dizkidate eskatutako opari guztiak ekarri?

Eta amak.

– Begira, [redacted]; normalean ume bakoitzari opari bana ekartzen diote, baina umeren batek beste batentzat eskatzen badu, orduan bi opari ere uzten dizkiote.

gogora etorri zitzaion Saharako basamortuan bizi zen bere laguntxo Sumaya.

Sumaya urtero etortzen zen udan euren etxera. Oso lagun onak ziren. pentsatu zuen, basamortuan gauza gutxi zituztenez, hurrengo eskutitzean Mari Domingiri eta Olentzerori bi opari eskatuko zizkiela, bata Sumayarentzat eta bestea beretzat: bizikleta bana.

Urtea pasa eta berriz idatzi zuen eskutitzean, Mari Domingiri eta Olentzerori azaldu zien nor zen Sumaya eta ze opari zen aukeratutakoa, ondoren eskutitza postontzian utzi zuen.





Opariak jasotzeko eguna iritsi eta iluntzean herritar guztiak herriko plazara joan ziren. Han ikusi zituen [redacted] lehenengo aldiz, gurdi baten gainean, Mari Domingi eta Olentzero, baita herritarrak gurdiaren atzetik kantuan ere.

[redacted] liluratuta eta arduratuta zegoen, ez zekielako eskatutako opariak ekarriko ote zizkioten.

Lotara joan zen, baina lorik egin ezin zuenez, gauerdian sukaldera itzuli zen. Bat-batean zarata arraro bat entzun eta txoko baten ezkutatu zen, horrela oparien ondoan ikusi ahal izan zituen bere eskolako laguntxo baten gurasoak.
Isil-isilik logelara itzuli zen.





Hurrengo goizean gurasoei kontatu zien gauean gertatutakoa.

– Zergatik zeuden nire laguntxoaren gurasoak oparien ondoan?

Eta gurasoek erantzun :

– Batzuetan Mari Domingik eta Olentzerok herriko gurasoei laguntza eskatzen diete opariak banatzeko, ume guztiek goizean oparia izan dezaten. Horregatik zeuden oparien ondoan zure laguntxoaren gurasoak.

opariak ireki zituenean, hura poza!!! Eskatu zituen opariak ekarri zizkioten!

– Baina zelan bidaliko diogu oparia Sumayari?

– Fardel baten bilduko dugu, eta zigiluak eta helbidea ipini eta berehala iritsiko zaio- esan zioten gurasoek.



Bidali zuten eta, handik denbora batera, etxeko postontzian eskutitz bat agertu zen. Sumayaren eskutitza zen!

Eskutitzean esaten zuenez, bidalitako opari polita Saharara iritsi zen, herriko ume guztiak liluratuta zeuden bizikleta dotorearekin, eta ia ume guztiek ikasi omen zuten bizikletan ibiltzen, horregatik denak pozez zoratzen zeuden.

“Emaiezu eskerrak nire partez Mari Domingiri eta Olentzerori!”.

“Udan, Euskal Herrira bisitan joango naizenean, ikasi ditudan jolas berri batzuk irakatsiko dizkizut”.





Hurrengo egunean, bizikleta hartu eta bere laguntxoarengana joan zen, Sumayak idatzitakoa kontatu zion.

– Joango gara Mari Domingiri eta Olentzerori bisita egitera eta Sumayaren partez eskerrak ematera?

– Goazen ba, orain badakigu non daukaten txondorra eta agian gaur, bertan egongo dira.

iritsi zirenean txondorra zegoen lekura gerturatu ziren, baina han ez zegoen inor. Txoritxoak aurrekoan bezala egurtxoak txondorrera eramaten zebiltzan eta Okila zuhaitzeko zuloan ikusi zuten. Itxarotea pentsatu zuten, agian Mari Domingi eta Olentzero agertuko zirelakoan.
Baina hauek agertu ez eta etxera itzultzera zihoazelarik,
gizon bat gerturatu zen eurengana, eta esan zien:

– Zeintzuk zarete zuek?

– eta gara. Eta zu?

– Ni mendizalea naiz.

Eta mendizaleak galdetu zien:

– Hain urruti etorrita, zer egiten duzue hemen?

– Mari Domingiri eta Olentzerori bisita egitera etorri gara eta eskerrak eman nahi dizkiegu opari ederrak ekarri zizkigutelako. Baina aurreko baten etorri ginen eta ez zeuden hemen, gaur ere ez dira agertu.



– Ziur asko beste mendiren baten daukaten txondorra zaintzen egongo dira, baina eurak beste mendi baten daudenean, hemen euren laguntzaileak egoten dira.

– Zeintzuk dira ba laguntzaileak?

– Mokoan egurtxoak daramatzatenek txondorra zaintzen dute haiek ez daudenean, eta bisitariren bat etortzen denean, zuek etorri zareten bezala, hor habian dagoen Okilak mezua bidaltzen die.

– Okilak ez daki hizketan baina!

– Guk bezala ez du hitz egiten baina okilek euren hizkuntza daukate eta Mari Domingik eta Olentzerok badakite hizkuntza hori.

– Zelan hitz egiten dute ba?

Mendizaleak esan zien:

– Kalean ikusi duzue norbait txalaparta jotzen?

– Bai!

– Ba, txalapartaren antzerako hizkuntza da. Zuk txoriari esan mezua eta ikusiko duzu nola berehala hasiko den Okila bere habiaren gainean mokoarekin kolpeak ematen.





mezua hasi zen esaten eta Okilak tak-tak-tak…
eman zituen golpetxoak habi gainean oso urruti entzun ahal izateko,
Mari Domingi eta Olentzero zeuden lekutik entzuteko doinuz.

Mendizaleak esan zien bi laguntxoei:

– Begira, Mari Domingiri eta Olentzerori mezu bat eman nahi diezuenean,
ez duzue honaino etorri behar.

– Zelan egingo dugu ba?

– Txoritxoek txondorra ez dutenean zaindu behar, kaleko etxe inguruetara
joaten dira eta hango zuhaitzetan kantari ibiltzen dira. Umeek Mari Domingiri
eta Olentzerori eskutitza idazten diotenean ze opari nahi duten esateko,
badaezpada komeni da etxe inguruan dabiltzan txoriei eskakizuna azaltzea.
Horrela txoriek Okilari esan eta honek mezua bidaltzen die Mari Domingiri
eta Olentzerori.

Bi laguntxoek, mendizalea eta txoritxoak agurtu eta kalera itzuli ziren.
Hurrengo egunean herriko ume denei azaldu zieten
ikusitakoa eta mendizaleak esandakoa.

Handik aurrera ume guztiek Mari Domingiri eta Olentzerori eskutitza idatzi ondoren, etxe ondoko zuhaitzean dabilen txoriari ere esaten diote nahi duten oparia.
Ume bakoitzak bi opari eskatzen ditu: bat beretzat eta bigarrena beste ume bati emateko, eta beti-beti bi opari ekartzen dizkiete.

“Eta hala bazan edo ez bazan…bakoitzaren desirak sar daitezela gutun azaletan, ateratzeko, LIBRE!, Euskal Herriko zelai zabaletan!”.





